# aurkibidea

# martxoa

Gazi-gozoa izan da martxoa. Hori da hilabete honek utzitakoa azaltzeko hitzik egokiena. Urteko hirugarren hileak bakea eta elkarbizitzaren aldeko urrats sendoak utzi dizkigu, baita euskal gizarteak onartzen ez dituen eskubide urraketak ere.

Hilabeteak, kopuruetan, azken 15 urteetako preso politikoen zenbakirik txikiena utzi du. Horrek ez du, ordea, errealitatea islatzen, ehunka direlako, epai eta epaiketa ezberdinen mehatxupean bizi diren euskal herritarrak.

Hori gutxi balitz, asteburuko senide eta lagunon bizitza ezbaian jartzen duen dispertsioak beste bi istripu eragin ditu. Txakur batek autobidera salto egin ostean istripua izan zuten Salamancako Topas espetxera zihoazen senideek. Asturiaseko Villabonako espetxean bisitatik bueltan, istripua izan zuen ere beste preso politiko baten bikotekideak. Noiz arte? Zerk gertatu behar du asmakizun anker honi amaiera emateko?

498

25 urte dira dispertsioa modu orokor, sistematiko eta kolektiboan indarrean jarri zenetik. Geroztik, 16 dira errepideetan bizitza galdu duten senide eta lagunak. Dispertsioak 16 hildako eragin ditu. Espetxe politika krudel honek eskubide urraketa du oinarri; aski da! Hau guztia gutxi balitz, Rodolfo Aresek –Iñigo Cabacas gaztea hil zuen operatiboaren buruzagi politikoak- dispertsioa erabiltzen jarraitzeko hautua egin du, eskubide urraketaren bidez helburu politikoak erdiesteko. Alderdikeria eskubideen gainetik. Aresek egindako deklarazioak ez dira onargarriak, are gutxiago, euskal gizarteak, gardentasun osoz, bake eta konponbidearen aldeko urrats sendoak eskatzen dituen garai hauetan.

Martxoak, dena den, gatazka politikoa gainditzeko eta bakea eta elkarbizitzaren aldeko urrats sendoak utzi dizkigu, urrats ausart bezain garrantzitsuak.

Alde batetik, iheslarien kolektiboko kide batzuk euskal herrira itzuli dira. Ihesean emandako urte luzeei bukaera eman eta, bake zuzen baten aldeko eragile izateko itzulia egin dute. Beste alde batetik, preso ditugun

gure lagun eta senideek estatuaren blokeo egoera gainditzeko beste pauso bat eman dute: preso gaixoek eta 70 urte baino gehiago dituztenek euskal herriratzeko eskari formala egin dute; Zaballako espetxera gerturatuak izateko eskaera, zehazki. Estatu frantsesean ere, Euskal Herriko gertuen dagoen espetxera gerturatzeko eskaria egin dute.

Pauso hau, Foro Sozialak egindako eskaerari emandako erantzuna da eta bakearen aldeko beste urrats bat izatea du helburu. Estatuaren mugikortasun eza eta jarrera hertsia agerian uzten duten pausuak dira, behin eta berriz. Bakea, konponbidea eta elkarbizitzaren aldeko pausu eta apustu sendoa.

Euskal gizarteak ulertzen ez duen mugikortasun ezaren aurrean, konponbidearen aldeko jarrera eta ekarpen garbiak dira.

**ETXEAN NAHI DITUGU !**

# sakabanaketa

## 498 euskal preso politiko 79 espetxetan sakabanatuta

- **377** preso espainiar estatuko 46 espetxetan sakabanatuta
- **105** preso frantziar estatuako 27 espetxetan sakabanatuta
- **6** preso Euskal Herriko 3 espetxetan
- **1** Ingalaterrako espetxe batean
- **1** Portugalgo espetxe batean
- **1** Sei Kondarrietako (Ipar Irlanda) espetxe batean
- **7** preso espetxeratze arinduan, pairatzen dituzten gaixotasunak direla eta

- **65** euskal preso Euskal Herritik **1000 eta 1100** kilometrotara dauden espetxeetan
- **136** euskal preso Euskal Herritik **800 eta 1000** kilometrotara dauden espetxeetan
- **97** euskal preso Euskal Herritik **600 eta 800** kilometrotara dauden espetxeetan
- **116** euskal preso Euskal Herritik **400 eta 600** kilometrotara dauden espetxeetan
- **68** euskal preso Euskal Herritik **400** kilometrotara baino gutxiago dauden espetxeetan
- **3** euskal preso Euskal Herritik urrun dauden 3 herrialdetako espetxeetan

# osasun eskubidea

## Juan Jose Rego Vidal euskal preso preso politikoak garuneko isuria izan du

Juan Jose Rego Vidal euskal preso politikoak garuneko isuria izan zuen pasa den otsailaren 23an. 75 urteko preso donostiarrak, bi urte eta erdi daramatza etxean preso zigorra betetzen. Bihotzeko gaixotasun larria du donostiarrak.

Rego Vidalek lau egun eman ditu Donostia Ospitalean ingresatua. Preso politikoari botika eta erabateko atsedena hartzeko agindu diote medikuek.

11

Juan Jose Regoren egoera bereziki larria da. 1939an jaio zen preso gaixoa, 2012.urtetik zigorra etxean betetzen ari da, kontrol neurri zorrotz eta ordutegi berezien pean. Egun, goizeko 10.00etatik 15.00tara soilik atera daiteke etxetik. Asteartero Martuteneko espetxera sinatzera joan beharra du, eta bertan hankan lotuta daraman kontrol-gailua berrikusten diote.

Etxeratek Estatu Espainolak preso gaixoen egoeraren aurrean beraien eskubide urraketa erabatekoa ozen salatu nahi du, hain oinarrizkoa den Osasun eskubidea baztertuz, preso baititu.

Azken gertakaria preso gaixoen urraketa horren erakusle besterik ez da, gaixotasun larri edo sendaezina izatearen ondorioz beraien askatasuna eskatzen duen 92.artikulua ez baitzaie legez aplikatzen.

## Ibon Iparragirre, Ertzaintzak atxilotua eta espetxeratua

Rego Vidalen kasuan bezala, Ibon Iparragirre ondarrutarra, etxean preso aurkitzen da larriki gaixo dagoelako. Iragan martxoaren 7an, Ertzaintzak Iparragirre atxilotu zuen, ordutik espetxeratua aurkitzen delarik.

Etxeratek Iparragirreren osasun egoeran aldaketarik egon ez dela azpimarratu nahi du. Iparragirre zigorra etxean betetzen ari zen eta larriki gaixorik jarraitzen du. Rego Vidal eta beste hainbat preso gaixoen kasuetan bezalaxe, Etxerat elkarteak 92. artikuluaren aplikazioa halabeharrezkoa dela uste du.

# salbuespen neurriak

## bizi osorako espetxe zigorra

Frantziar estatuan, bizi osorako espetxe zigorrari dagokionez, ez da urte kopuru maximorik. Biziarteko zigorrera ("perpétuité" deitzen duten neurria) kondenatua den preso batek baldintzapeko askatasuna eska dezake 15 urteren buruan (edo "segurtasun kondena" bete ondoan, kondenari neurri hau gehitzen bazaio), baina, erabakia Kondenen Aplikapenen Epailearen esku da, eta honek etengabe uka dezake. Preso sozial batzuek kasik 50 urte pasa dituzte Frantziako kartzeletan.

Euskal preso politikoen artean, 4 neurri honen pean aurkitzen dira gaur egun: 24garren urtea betetzen ari diren **Jakes Esnal, Frederik Haranburu** eta **Ion Kepa Parot**, eta 2013an kondenatu duten **Mikel Karrera**. Beste hainbat euskal presori bizi arteko zigorra eman diete "de facto" oso kondena luzeekin edota kondena ezberdinak akumulatuz.

Espainiar estatuari dagokionez, bizi osorako zigorra ahalbidetzen zuen 197/2006 doktrina indargabetu ostean, **gure senide eta lagun ugari** 40 urteko espetxe zigorra betetzera zigortu dituztela. Hau da, bizi osorako espetxe zigorrak aplikatzen dizkiete.

# espetxeetan

## eskubide urraketak
## bestelako gertakariak

### isolamendua

Bakartze edo isolamenduaren aplikazio zorrotza euskal preso politikoen bereizgarri bat da. Isolamendua edo bakartzea egoera oso zehatzetara zuzendutako neurria bada ere, espetxe arautegian (zigor puntual gisako neurritzat hartzen dena), gure senide eta lagunen kasuan ohiko edota behin-betiko neurri gisa aplikatzen da. Esan bezala, euskal presoen kasuan isolamendua edo mitarda maiz ezartzen den zigor bat da. Baina zenbait kasutan presoak agian isolamenduko moduluan egon ez arren bakarrik egoten dira, hau da, beste kiderik edo euskal preso politikorik gabe egoten dira, eta kasu hauetan bakartuak daudela esaten da. Hona hemen momentu honetan espetxeetan bakarturik dauden preso politikoen zerrenda:

| | | |
|---|---|---|
| **Euskal Herria** | Zaballa | Txus Martin |
| | Basauri | Aitzol Gogorza |
| | Basauri | Ibon Iparragirre Burgoa |
| **Espainiar estatua** | Alacala | Jose Campo |
| | Almeria | Iratxe Yañez |
| | Bonxe | Josu Amantes |
| | Castello I | Marta Igarriz |
| | Mansilla | Olga Comes |
| | Murcia II | Oihana Mardaras |
| | Puerto III | Arantza Zulueta |
| | Segovia | Jon Enparantza |
| | Soto del Real | Iñaki Lerin |
| | Valladolid | Miren Zabaleta |
| **Frantziar estatua** | Tarascon | Alex Akarregi |
| **Portugal** | Monsanto | Andoni Zengotitabengoa |
| **Sei Konderriak** | Belfast | Fermin Vila |
| **Ingalaterra** | Long Lartin | Raul Fuentes |

## espetxeetako egoerak okerrera

**Puerto II :** Kadizeko espetxean zeuden euskal bi preso politikoak atera dituzte Andaluziako beste espetxe batera eramateko, Puerto Iera hain zuzen ere.

**Réau Sud-Francilien :** Mertxe Chivite euskal preso politikoak obarioetako ebakuntza izan zuen. Ebakuntzaren ostean, espetxera bidali zuten. Tratua egokia izan da, tratuan zein osasun arloan.

## komunikazio eta bisitak

**Seysses:** Martxoaren 21ean Ruben Rivero Campo preso politikoaren bikotekidea agintaritzaren kontrako mehatxuak egiteagatik epaitu zuten Toulousen. Gertakariak otsailaren 7an izan ziren. Neskak bere bisita baimena indargabetua zuela jakin zuenean, azalpen eske espetxeko funtzionarioen nagusi batekin elkarrizketa labur bat izan zuen. Horren ostean, funtzionarioak neska salatu zuen. Epaileak erruduntzat jo zuen gaztea eta honako zigorra ezarri zion: 1000 euroko isuna, 600 euroko indemnizazioa salatzaileari eta salatzailearen abokatuaren gastuak ordaintzeko 500 euro.

**Ocaña:** Azken hilabeteetan, euskal preso politikoen senide eta lagunen aurkako jazarpena nabaria da. Urtarrilean, jarraitzen zietela  konturatu ziren senideak baina, geroztik, egoerak okerrera egin du. Jarraipenei, kontrolak, identifikazioak eta senideen lo lekuetan poliziek eginiko agerpenak gehitu behar zaizkie.

**Huelva:** *Bis a bis*-etako ordutegia aldatu dizkiete. Orain, bisitak baino lehen dituzte. Orain arte, *bis a bis*-ak bisiten ostean izaten ziren.

# senide eta lagunak

## sabanaketak eragindako istripuak

**Martxoaren 1eko asteburuan**, Villabonako espetxean dagoen **Anartz Oiartzabal**en neska lagunak istripua ukan zuen. Kotxearen kontrola galdu zuen Deba inguruan bisita egitetik bueltan zetorrelarik. Berak zortez ez du ezer izan, baina kotxea nahiko kolpatua izan da. Aurretik beste istripu bat egon zen leku berean eta agian olioa edo gasolina egon zitekeen bidean.

**Martxoaren 22an**, Topaseko espetxera joaten zirelarik, **Gaizka Astorkizaga, Txente Askasibar eta Xabier Ugarte** presoen bikotekideek istripua ukan zuten Burgosen aldean txakur bat errepidera atera zitzaienenean. Ez da inor zauritua izan. Azken istripu hau aurtengo hirugarrena izan zen.



# askatasunak

**Josu Beaumont Barberena** (Beruete), martxoaren 1ean.
**Ibon Elorrieta Sanz** (Bilbo, Irala eta Busturiakoa), zigorra beteta martxoaren 5ean atera zen.
**Endika Abad San Pedro** (Barakaldo), martxoaren 14an atera zen zigorra beteta.
**Oihana San Vicente Saez de Zerain** (Agurain), martxoaren 17an, estatu frantsesetik kanporatua izan eta gero aske gelditu zen .
**Andoni Sarasola Yarzabal** (Lesaka), martxoaren 17an aske gelditu zen Estatu Frantsesetik kanporatua izan eta gero.
**Iñigo Otazua Urresti** (Algorta), martxoaren 17an aske geratu zen 20 urteko zigorra bete eta gero.
**Asier Virumbrales Amenabar** (Durango), martxoaren 26an.
**Iñaki Loizaga Arnaiz** (Donostia), martxoaren 26an.
**Xabin Juaristi Arrieta** (Azkoitia), martxoaren 26an.
**Gorka Azpitarte Rejado** (Otxandio), 5 urteko zigorra bete ta gero estatu frantsesatik kanporatua eta aske geratu zen martxoaren 26an.
**Idoia Iragorri Petuya** (Sestao), martxoaren 27an.
**Unai Ruiz Pou** (Gasteiz-Errota), martxoaren 27an.
**Goizane Pinedo Apaolaza** (Gasteiz-Errota), martxoaren 27an.
**Irati Mujika Larreta** (Amezketa), martxoaren 27an.

# espetxeratzeak

**Ibon Iparragirre Burgoa** (Ondarru), martxoaren 7an Gizaburuagan, 2011tik espetxeratze arinduan zegoelarik pairatzen duen eritasun larriagatik.

# leku aldatzeak

## destino aldaketa

ESPAINIAR ESTATUA

**Sara Majarenas Ibarreta** (Donostia), Soto del Realetik Aranjuezera
**Agustin Almaraz Larrañaga** (Donostia-Bilbo), Puerto IItik Puerto Iera
**Iñigo Guridi Lasa** (Billabona), Puerto IItik Puerto Iera
**Irantzu Gallastegi Sodupe** (Berango), Puerto IIItik Huelva IIra
**Oihana Mendizabal Mujika** (Ordizia), Brievatik Valencia III Picasentera
**Jon Rubenach Roiz** (Antsoain), Soto del Realetik Saint Martin de Réra
**Jabi Abaunza Martinez** (Gernika-Lumo), Soto del Realetik Moulins-Yzeurera
**Gorka Palacios Aldai** (Durango), Ocaña Ietik Saint Maurera
**Rufino Arriaga Arruabarrena** (Ordizia), Puerto Ietik Sevilla IIra
**Ibon Muñoa Arizmendiarrieta** (Eibar), Puerto Ietik Cordobara

FRANTZIAR ESTATUA

**Ander Mujika Andonegi** (Donostia), Bourg en Bressetik Béziers-era
**Txeber Arruabarrena Carlos** (Elorrio), Fleury Merogisetik Béziers-era

# hilabeteko gaia

## Amatasuna - Aitatasuna espetxean : Aner Petralanda eta Iñaki Gabilondorekin elkarrizketak

**Aner Petralanda eta Iñaki Gabilondoren bikotekideak espetxean daude. Eta presondegian egon arren, amatasun eta aitatasun eskubideari uko ez egitea erabaki dute biek. Horregatik, ezin izan ditugu biak elkartu elkarrizketa egiteko; euren egunerokoak oso ordu gutxi uzten dizkielako libre. Elkarrizketan aitatasuna eta amatasunaren inguruan jardun dugu; egoera berezian bizitzea egokitu zaien aitatasun eta amatasunaren inguruan hain zuzen. Nola bizitzen da amatasuna espetxean? Eta aitatasuna?**

**Nolakoa da, egun, Alizia eta Anabelen egoera?**

**Aner Petralanda:** Anabel 2008ko uztailean atxilotu zuten eta urte ta erdi espetxean egon ostean baldintzapeko askatasunean atera zen. Bi urte pasatu zituen kalean (epaiketan 5 urteko zigorra ezarri zioten eta supremoak zer ebatzi zain egon zen) eta honez gain, haurdun zegoen eta espetxetik kanpo erditzeko aukera eman zioten. Gauzak horrela, Aiurrek 10 egun zituela, biak Aranjuezeko espetxean sartu zituzten. Gaur egun urte ta erdi gehiago darama espetxean, guztira 3, beraz bi urte falta zaizkio kalera ateratzeko, 2016ko Martxoaren 7an baitu irteera data. Gaur egun Aranjuezeko espetxean jarraitzen du Aiurrekin batera, bertako ama moduloan. Berarekin batera, Nerea Garaizar+umea, Olga Sanz+umea eta Sara Majarenas+umea daude.

**Iñaki Gabilondo:** Alizia Logroñoko espetxean daukate, 2.graduan, beste kide batekin dago ziega berean eta hilean behin familiarra, intimoa eta konbibentzia bisak dauzkagu. 13 urte daramatza kartzelan eta Avila. Alicante, Valentzia eta Madrilen izan dute Logroñora eraman aurretik. 40 urte ditu eta bi alaba izan ditu kartzelan. 2004an lehena, Ortzadar, Valentzian jaioa eta bigarrena Madrilen, Zura. 30 urteko zigorra betetzen ari da.

**Bikotea kartzelan izatea nola bizi duzue? Eta zuen seme-alabek ama espetxean egotea nola bizi dute?**

**AP:** Denok dakigu espetxean senide bat izatea zer den maila afektiboan zein maila pertsonalean, beraz ez dau desberdintasun handirik kalean dauden beste senideekin alderatzen badugu. Desberdintasun bakarra hauxe da, gure seme alabak beren amatxorekin espetxe barruan daudela, eta honen ondorioz, aitatasuna eta amatasuna, kanpoko jende gehienarekin alderaturik desberdin bizi dogula esango

nuke nik. Egoera zein den eta hartutako erabakiaz kontziente izanda, egoera horretara moldatzea da gakoa. Guk momentu bereziak intentsitate handiz bizi ditugu, daukagunari eutsi egiten diogu eta  oso zoriontsuak gara alde horretatik.

**IG:** Aitak ausentziarekin aurrera egin beharra du, familia bat aurrera ateratzeko beharrezkoak diren erabakiak ausentzia horrekin hartu beharra dagoelako. Ausentzia horri lekua egiten diozu etengabe eta badakizu nor den ausentzia hori beteko duen bakarra, baina ez dago hor; joku bortitz bat bezalakoa da eta jokatu beharra daukazu burua makurtu gabe eta horretan familiaren, lagunen eta herriaren laguntza oinarria dira. Laguntza hori gabe nekez mantenduko ginateke zutik . Bestalde aitatasuna bizitzeko aukera izugarria da, nahitaez ezarritako ereduari buelta ematen diozulako eta hori magikoa da. Aita bezala zure txikiekin lantzen duzun harremana oso sakona da eta asko betetzen zaitu pertsona bezala. Alderdi honi dagokionez, pribilegiatua sentitzen naiz eta hori ere hor dago.

**Joku bortitz bat bezalakoa da eta jokatu beharra daukazu burua makurtu gabe eta horretan familiaren, lagunen eta herriaren laguntza oinarria dira, laguntza hori gabe nekez mantenduko ginateke zutik.**

Eredua, nire ustez, oso garrantzitsua da. Gizarteak orokorrean eredu bat ezartzen du  eta eredu hori betetzen baduzu bakearen itsaso zabal batean murgilduko zarela ematen du, baina errealitatea bestelakoa ikusten dut nik etengabe: asko dira ama edo aitarik gabeko umeak, asko aita eta ama banatuta dituztenak, asko bikotea batera egon arren oso egoera zaila bizi dutenak eta abar...denak dira egoera zailak eta gogorrak, denak hari fin baten gainean oreka mantendu nahian. Kartzelak banatutako familien kasuan haria sendoa eta gogorra delakoan nago eta sendotasun horren oinarrian elkarrenganako konfidantza eta maitasun zintzoa ageri zaizkit, gurea bezalako harremanak mantentzeko derrigorrezko osagaiak baitira.

Bitartean bizitzea erabaki dut eta bitarte horretan irrifar bat marraztu nahi dut gure bi alabaren aurpegietan, amesten ditugun helburuak lortu bitartean behintzat, ahalik eta alaien eta duinen bizitzeko;  beraiei zor diegula uste dut, gure txikitxoei eta ziega barrenean daudenei. Helburu horiek lortzen ez baditugu, gutxienez bizitzea lortuko dugu, alai eta duin.

**Zeintzuk dira bizi-baldintzak? Nolakoa da amatasuna espetxean?**

**AP:** Ba azkeneko urte eta erdian nabarmen okertu dira Aranjuezen behintzat. Justu sasoi horretan (duela urte ta erdi gutxi gora behera)segurtasun zuzendariordea aldatu zuten eta aldaketa horrekin batera dena okerrera joan da. Bizi baldintza aldetik, aldaketa sakone-

nak bi izan dira (asko daude aipatzeko, hala ere): lehen, asteburuko bisitak aurrez aurrekoetarako egokiturik dauden geletan egiten ziren, berez umea eta kristala, hau da, lokutorioa eta umea inkonpatibleak zirelako. Orain aldiz, lokutorioetan egiten dira (hau da, kristala tartean dela). Umeek 40 minutu pasatu behar dituzte lokutorio baten barruan eta lokutorioak ez dira umeentzako tokiak. Kristala dago tartean, leku txikiak eta egokitu gabeak dira, berez ezin dira hortik atera…Hau da, momentu askotan umeek gaizki pasatzen dute, bertan aspertu egiten direlako edo ez dutelako bertan egon nahi, eta honekin batera Anabelek komunikatzeko duen eskubidea urratu egiten da, bisita ezin delako modu egokian burutu. Bestetik, umeen irteera eta sarrerak (umeek nahi dutenean kalera ateratzeko eskubidea dute, beraiek preso ez daudelako) astean bi egunetara mugatu dituzte eta lehen ez zegoen inolako mugarik. Honek zer ondorio ekarri ditu?




Espetxetik umea ateratzeko momentuak ez daude umearen beharretara egokituta. Bertako langileen funtzionamenduaren arabera egiten dira ordutegiak. Gogoratu behar dogu, umeak ez daudela preso, presoak beraien amak direla eta honen ondorioz ezin dela umea jasotzeko mugarik jarri.

Bestetik eta baldintzen okertzearekin jarraituz, azkeneko urte erdi honetan ere, urteetan batera egon diren bikoteak banatu dituzte. Umea jaio gabe zegoenean batera zeuden eta umea jaio eta berehala elkarrengatik banandu eta aita ama eta umea ez dauden beste espetxe batera eraman dute. Erabaki hau mendeku hutsa izan da eta kaltea baizik ez du eragin.

Honez gain, badago eguneroko bizimodua izorratzen saiatzen diren funtzionario talde bat. Egunaren arabera, neurri berriak asmatzen dituzte, umeengan eragin zuzena dutenak, eta egunero tentsio uneak bizi dituzte beraiekin.

**IG:** Zaila da aita batentzat amatasunari buruz mintzatzea, esperientziarik ezin duelako izan alderdi horretan. Gu ondoan gaude eta ikusten duguna oso bortitza da lehen unetik. Gure kasu konkretuan oso zorionekoak izan gara, haurdunaldia, erditzea eta umeek amarekin bizi izan dituzten hiru urteetan ez dugulako osasun arazo larririk izan eta hori asko da. Umeak sano hazi ziren amaren sabelean, sano jaio ziren eta sano bizi izan ziren ziegan, eta horretan kartzelak ez du laguntzen. Kartzelak bere erritmoa dauka, presoak zenbakiak dira eta euskaldunak gorriz markatuak daude; kartzelaren erritmoa orokortasunean oinarritua dago eta hortik kanpo kokatzen denak traba egiten duela ematen du. Gure presoek ez dute erritmo hori jarraitzen, are gutxiago haurdun bazaude. Hasieratik trasladoekin hasten dira eta azken unerarte ez dakizu ziur maparen zein puntutan erdituko duen; erditzean amarekin batera egoteko baimena lortzen duzu, jaio ondoren bisitatzeko eta abar… baina jaio bezain laster balioa galtzen du baimen horrek, eta nik behintzat ez dut bi alaben erditzean egoterik izan, nahiz eta alabak jaio zirenenan ni ospitalean egon eta erditzean egoteko baimena izan; Poliziak bertan dituzu aurrez-aurre eta ez zaituzte ongi tratatzen, baina medikuren batek ama eta umea sano eta ongi daudela esaten dizunean sekulako lasaitua hartzen duzu. Gero espetxera bidaltzen dituztenean egoera lasaitu egiten da aitarentzat; txikia amarekin dago eta hori nahikoa da. Amaren kasuan, ene ustez, barrenean izan duen pertsonatxo hori ikustearen handitasunak guztiari aurre egiteko indarra emango diola, baita gu hor zehar gabiltzala ere.

**Kartzelak bere erritmoa dauka, zenbakiak dira presoak eta euskaldunak gorriz markatuak gaude; kartzelaren erritmoa orokortasunean dago markatua eta hortik kanpo kokatzen denak traba egiten duela ematen du.**

Umea eta ama espetxeratu zituztenean nahiko lasaitu zen kontua gure kasuan. Hortik aurrera bidaiak ere biderkatzen dira, bisitak eta bisak egiteaz gainera haurra kanpora ateratzeko beharra dagoelako, aita eta kanpokoarekiko ohitzeko eta amak ere atseden pixkat izan dezan, baina kanpoko hori ez da Euskal Herriko kontextua eta euskaldun bat Marten sentitzen zara. Ondoren umearekin bidaiak egiten hasi ginen EHraino eta momentu gogorrak dauden arren, sekulako abenturak bailiran planteatuz gero une oso ederrak bizitzeko aukera izan dugu.

Barrenean guk bi esperientzia izan ditugu eta biak desberdinak izan dira. Lehen haurrarekin Alizia bakarrik zegoen (beste euskaldunik ez zegoen) eta bigarrenean berriz taldetxoa zeukan eta gauzak askoz errazagoak dira lagunduta; bestalde, esango nuke posible dela haur bat haztea espetxean, baldintza gogorrenetan ere bizitzak garaitu egiten baitu eta txikiekin batera

Alizia espetxean laino batean bezala sentitu zela pentsa dezaket, etxe gris eta ilun horietan kolorez beteriko garaia sortu balitz bezala, hain zuzen ere. Hala ere, ama moduloan borrokak etengabeak ziren, umeekin igerilekura ateratzea lortzeko, beharrezko edozein gailu lortzeko (esnea ateratzeko gailua, esaterako)...edozein kontu lortzeko amak borrokan etengabe egin behar zuela oroitzen dut.

**Amatasun eskubidea urratua da beraz?**

**AP:** Ez, amatasun eskubidea ez da urratzen, ama izateko eskubidea badu-zulako eta umea espetxean hiru urte egin arte egon daitekeelako (*Espainiar estatua*). Asuntoa da, zein baldintzetan bizitzen den egoera hau. Eta egoera horren barruan umeen eskubideak urratzen direla azpimarratu behar da. Nola? Ama eta umearen kontrako neu-rriak hartuz: alde batetik, hartzen diren erabaki guztietan edo gehienetan ez dira umeak kontutan hartzen. Honekin hauxe esan nahi dut, "segurtasuna" aintzat harturik espetxearen funtziona-mendurako harturiko erabaki gehiene-tan umeen eskubideak urratzen direla. Hau da, zergatik dira orain bisitak loku-torioetan? Ba ustez asteburuoro gauzak sartzen zirelako bisitetan (hori esaten dute, behintzat) edo agian beraientzat errazagoa delako honela egitea, lan gutxiago egin behar dutelako. Eta zer-gatik murriztu dira sartu eta irteerak? Ba, espetxeko zuzendariordearen logi-kari jarraitzen badiogu… auskalo. Ber-tan lan egiten duten ONGak ere harri-tuta daude hartu dituzten neurri guztiak ikusirik, ez direlako konpatibleak ama modulo batekin.

Horregatik, badago beste irakurketa posible bat eta agian larriagoa izan dai-tekeena, zein da? Ba neurri hauek hart-zen dituztela ama moduloak kendu nahi dituztelako edo espetxe barruan umerik nahi ez dutelako, nahiz eta emakumeek honetarako eskubidea izan. Nola? Nik zure bizi baldintzak okertzen ditut eta zuk hobeto pentsat-zen dozu ama izan nahi ote duzun es-petxe barruan: bisitak kristalarekin jartzen dizkizut,, umeen irteerak mu-gatzen ditut, zigorrak eta arau berriak egunaren arabera as-matzen ditut, zure bikotea ez dakit zen-bat kilome-trotara dozu...

**Azken batean haurren eskubideak ere jokoan daude eta horrekin ezin da jolastu. Gauza izu-garriak gertatzen dira amen moduloetan...**

**IG:** Ama eta aita izatea baldintza haue-tan guretzako askatasun ariketa bat izan da, izan dezakezun askatasun ari-keta bakarrenetakoa iruditzen zait. Be-raiek ezin izan ziguten ukatu eta gehiena ukazioa izaten dela esan behar da. Haurra kartzelan dagoen lehen hiru urteetan aitatasun eskubidea urratzen dela esaten ausartzen naiz eta kanpora ateratzen denean amatasuna-rena. Baldintzak ez dira egokiak, baina nahi izanez gero baldintzak egokitu dai-

tezke eta gauzak erraztu, azken batean haurren eskubideak ere jokoan daudelako eta horrekin ezin da jolastu. Gauza izugarriak gertatzen dira ama moduloetan; esaterako gaixotasunen bat hartutako haurra hospitalera eraman eta ama espetxean utzi; hilabete luzeetan aita ezagutzeko aukera ere izan ez duten umeak izan dira, eta udako beroak itotzen zuenean lurrean lo egin behar zuten umeek..nik oso ongi ulertu dut kartzelatan ahuldade bat somatzen dutenean ez dutela kupidarik eta gainera profitatzen dute ahuldade hori edozein helburu miserable lortzeko eta noski, haurrak horretarako asko erabiltzen dituzte; indartsu egotea beharrezkoa da.

**Gaia ez da oso ezaguna gainera, ezkutuko errealitate bat al da?**

**AP:** Ez dakit ezkutuko errealitate bezala definituko nukeen. Urteetan zehar eta oztopo guztiak gaindituz Euskal preso politiko askok hezi dituzte beraien seme alabak espetxe barruan, nahiz eta egia den orain arte ez dela asko hitz egin honetaz. Hala ere, gero eta gehiago gara erabaki hau hartu dugunak eta agian horregatik honetaz gehiago hitz egiten da, ez dakit...

**IG:** Ez dakit. Espetxeak gizartearen miseria ezkutatzeko erabiltzen dira eta bertan gertatzen direnak azaleratzea eta gizarteratzea oso zaila da. Errealitate hauek ezagutaraztea ez da batere erosoa eta, gainera, kasu askotan intimitateak ere zeregin garrantzitsua du, gure harremanak baitira. Bestalde komunikabide handiak diruaren zerbitzura ari dira eta posible da Espainia guztian ikusten den telebista kate batean, ordutegi egokian, munduko kartzelei buruzko dokumentalak ikustea eta etxean dituzten errealitateak guztiz ezkutatzea.

**Zenbat espetxetan egon daitezke umeak euren amarekin?**

**AP**: Gaur egun, estatu espainiarrean bi espetxe daude honetarako “egokituta”: Aranjuez eta Valentzia. Lehen gehiago zeuden: Teixeiro, Palencia, Granada… Beraz, bi espetxetan daude ama eta ume guztiak. Valentzian: Oskarbi Jauregi + umea, Lierni Armendariz+umea, Nahikari Otaegi+umea, Josune Oña+umea daude.

**IG:** Gogoratzen dut Espainian PSOE gobernuan izan zenean saiakera bat egin zutela espetxeetako ama moduloak itxi eta baldintza jakinak betetzen zituzten amak, beraien haurrekin, kanpoan eraikitako pisuetara eramateko. Pisu horietan biziko ziren baldintza jakinetan eta haurrak herri horietako gizartean txertatzea zen asmoa (haurtzaindegiak...). Oker ez banago 5-6 bat puntutan eraikitzekoak ziren pisu horiek eta gure ingurutik aurreikusten zen gertukoena Madrilen zegoela uste dut. Modulo batzuk itxi ziren eta pisuak eraiki eta baldintzak betetzen ez zituztenak Aranjuezen bildu nahi zituzten. Noski, euskal preso politikoek ez zituzten baldintzak betetzen eta pentsatzen genuen Aranjuezen elkartuko zituztela.




Horretan hasi ziren eta amaitu baino lehen PPk gobernua eskuratu zuen eta bertan behera gelditu zen saikera hura.

Ondoren itxita zeuden moduloak ere zabaltzen hasi ziren berriz eta gaur egun nik ez dakit zenbat ama modulo dagoen, (agian Anerrek jakingo du).

Espetxe bakoitza mundu bat da eta honetan ere berdin. Gure lehen umea Valentzian jaio zen, baina hilabete eta erdirekin Aranjuezera ama eta umea eraman zituzten eta hori da guk ezagutu genuena. Orain bisitak kristala tartean egiten direla uste dut (lokutorioetan). Guk Aranjuezen kristalik gabe egiten genituen umea bertan bazegoen eta esaterako, besteetan kristalarekin egiten zituztela uste dut. Gero aldea egon daiteke asistentziaren aldetik, batean pediatra jatorra egokitzen bazaizu ez baita gutxi. Eta haurtzaindegiko zaintzaileak modu egokian aritzen badira, hori ere asko da.

Umeak hiru urte egin arte egon daitezke amarekin eta gero guk bezala bisitetara moldatu beharra daukate, 40 minutuko bisitak lokutorioetan eta bis familiarra hilean behin...Gure kasuan egoera berrira ohitu behar izan dute. Gu beti egia esaten saiatu gara eta kontatu behar diozuna gogorra izan arren, ulertzeko izugarrizko gaitasuna dutela erakutsi digute. Beraiek badakite zer gertatuko den, norekin eta non biziko diren, baina gertatzen denean oso gogorra da. Ene ustez, une hori behar bezala prestatzea ezinezkoa da. Bakoitzak ahal duena egiten du eta aurrera jarraitzea besterik ez dago. Ondoren amarekin zuten lotura hausten dela iruditzen zait eta kanpokoekin loturak berriak egiten hasten dira, ate asko irekitzen zaizkielako kanpoan; bat-batean lehen ezinezkoak ziren hainbat gauza eskuragarri dira orain (itsasoa, mendia, izarrak, janariak, jostailuak...) eta hor sekulako momentuak daude. Poliki-poliki errealitate berriari egokitzen dira eta konturatu orduko txikitako gauza asko ahazten hasten dira. Eta kanpoan herriarengatik jasotzen duten maitasuna eta laguntza oso garrantzitsuak dira, eta aipatu nahiko nuke Pirritx eta Porrotxek egiten duten lana, bihotzez eskertzekoa benetan. Gero, adinaren arabera beharrak ere

